# ABENDUALDIKO IV. DOMEKA
# C urtean

**I. IRAKURGAIA** *Zugandik urtengo dau Israelen buruzagiak.*

Mikeasen Profezia liburutik *Mi* 5, 1-4a

Hauxe dino Jaunak:
Zu, Efratako Betleem, Judako leinuetan txikiena,
zeugandik urtengo dau Israelen buruzagiak.
Aspaldikoa da honen sortzea,
betiereko egunetakoa.
Horregaitik, itzi egingo dau Jaunak herria,
amak umea izan dagian arte.
Orduan, atzerrian bizirik gelditutako senideak
Israelgoengana bihurtuko dira.
Sendo eutsiko deutso eta artzain bizkorra izango da Jaunaren indarrez,
Jaunaren bere Jainkoaren izen handiaz.
Nasai biziko dira herritarrak;
handi agertuko da-eta ha lurraren mugetaraino,
eta bakea ekarriko dau.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa *Sal* 80 [79], 2acd eta 3bc. 15-16. 18-19 (R/. 4)

ABN04C — Sal 079

♩ = 80

Udaia'15

Jain-ko, ber -biz- tu ga - gi -zuz, sal- ba-tu gai- te -zan zu - re be- gi - a leun a -ger-tu e - gi -zu

R/. Jainko, berbiztu gagizuz;
salbatu gaitezan, zeure begia leun agertu egizu.

V/. Entzun, Israelen artzain,
hegodun izakien arteko tronuan zagozan horrek!
Indartu zeure ahalmena
eta zatorkiguz salbatzera. R/.

V/. Jainko ahalguztiduna, bihurtu, arren,
begira zerutik, ikusi!
Hartu egizu zeure mahatsondoaren ardura,
zaindu zeure eskuz landatu dozuna. R/.

V/. Emoiozu eskua zeure aukeratuari,
zeure indarrez jantzi dozun gizasemeari.
Ez gara Zugandik inoiz aldenduko;
Zuk bizia emongo deuskuzu
eta guk dei egingo deutsagu zure izenari. R/.

## II. IRAKURGAIA *Hemen nozu, Jainko, zure nahia betetzeko.*

Hebrearrei egindako epistolatik *Heb* 10, 5-10

Senideok: Kristok, munduan sartzean, dino:
«Ez zenduan oparirik eta eskeintzarik nahi izan;
baina gorputza eratu zeunstan.
Erre-oparirik eta pekatuen parkamen-oparirik
ez zenduan atsegin izan.
Orduan, esan neban:
Hemen nozu, Jainko, zure nahia betetzeko;
hau dago Liburuan Nitaz idatzita».

Lehenengo dino: «Ez zenduan nahi izan, ez atsegin izan, oparirik eta eskeintzarik, ez erre-oparirik, ez pekatuen parkamen-oparirik», nahiz eta gauza guztiok legeak agindutakoak izan. Ondoren beste hau

dino: «Hemen nozu, zure nahia betetzeko».
Lehenengo kultua kentzen dau, bigarrena jartzeko. Eta Jesu Kristok, behin betiko egin eban bere gorputzaren opariaren bidez, Jainkoaren nahia bete daualako izan gara gu sagaratuak.

Jaunak esana.

Aleluia *Lk* 1, 38

R/. **Aleluia**.

V/. Hona hemen Jaunaren mirabea;
jazo bekit zuk dinozun lez. R/.

**EBANJELIOA** *Nor naz ni, nire Jaunaren ama ni ikustera etortzeko?*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 1, 39-45

Aldi haretan, Maria jagi eta bizi-bizi mendi aldera joan zan, Judeako herri batera, eta, Zakariasen etxean sartuta, Elisabeti agur egin eutson.
Mariaren agurra entzun eban orduko, salto egin eutson Elisabeti seinak sabelean.

Elisabet Espiritu Santuaz bete zan, eta esan eban oihu handiz: «Bedeinkatua zu emakumeen artean, eta bedeinkatua zure sabeleko frutua. Nor naz ni, nire Jaunaren ama ni ikustera etortzeko? Zure agurra nire belarrietara heldu orduko, salto egin deust umeak pozez sabelean. Zorionekoa zu, Jaunak esan deutsuna beteko dala sinistu dozulako!»
Jaunak esana.

## HITZALDIA

Abendualdiko 4. eta azken domeka honek Gabonak gainean daukaguzala dinosku, eta amaitu dogula prestakuntza aldia. Orain, prestatu doguna ospatzea dagokigu.

Ba, senideok, ba gagoz ezer ospatzeko? Prestatu doguna, gauzatuko dala uste dogu? Behar bada, holantxe izan dala beti, eta betikoa egingo dogu: gure inguruko ondo-eza salatu, inor errudundu eta geurean jarraitu.

Politika mailan, hauteskunde guztietan entzuten dana hauxe da: "*geugaz dator aldakuntza*". hau da: daukagun egoerea *aldatu* egin behar da. Hori aldarrika iragarten da. Baina zer jazoten da ondoren?

Gure bizikerea aldatu egin behar dogula esaten dogu. Baina zer jazoten jaku? Gauzak ondo ez dagozala eta aldatu egin behar dirala esaten da, baina zer jazoten da? Eta horrela gauza guztietan eta beti. Zergaitik?

Hauxe da, senideok, bakotxak geure buruari egin behar deutsagun galderea: zergaitik ez naz aldatzen, edo ez dot aldatzen, aldatu beharra dagoala uste badot? Behar bada, aldakuntzak ez dagozalako norbere esku…

Lehenengo irakurgaiak Mikeas profeteak zelango aldakuntzak egingo dituan Jainkoak iragarri deusku: sinistu deutsagu? Ba gara gauza aldakuntzok *ikusteko* edo *igarteko* gure inguruan eta geure barruan? Ba ezetz esan behar izango

geuke, Hebertarren idazkian iragarri jakuna onartzen badogu, behintzat.

Gure otoitzetan-eta, eskatu egiten deutsagu Jainkoari hauxe edo beste aldakuntza ha gauzatu daian; eta, horretarako, sakrifizioak eta beste ekintzaren batzuk agintzen deutsaguz. Hausnartu dogu inoiz, ea Jainkoak gure gauzarik behar dauan? Aztertu dogu inoiz Jainkoak gugandik zer itxaroten dauan? Hebertarrei egindako idazki horretan Jainkoak gugandik ez dauala sakrifiziorik eta erre-oparitakorik itxaroten esan jaku; eta hori ulertu dauanak «*hona hemen ni, zure nahia egiteko*» dinola.

Horixe da, senideok, norbere bizitza eta ingurua aldatzeko era bakarra: Jainkoaren esanetara jartea.

Mariak «*hona hemen Jainkoaren mirabea*» esanez, salbamena bere erraietan agertuazo dau, eta haren poza eroan eutson bere ahaide Isabeli, eta bere aldia barriztatu eban.

Jainkoaren esanetara jarri beharra daukagu gure arteko arazoetan geure hazitxoa erein gura badogu: hortxe dagoz, etxe bakoak, edo euren lurraldetik urtenbeharra izan eta han-hor-hemen galtzen dagozanak; edo izurriteak jota dagozanen ohe-ondoan diharduen erizainak; edo beharrizanak eraginda lapurretan edo trafiko legez kanpokoan zikintzen diranak…

Caritasek bere gain hartu dau arazo hori, eta beragaz bat egiteko eskatzen deusku. Eginahalak egin arren, ez dogu arazoa konponduko, senideok. Baina izan daigun argi: guri dagokiguna ez da arazoa konpontzea, geure garautxoa jartea baino. Eta horretarako gure ulerkerea aldatu beharra daukagu, eta Jainkoari *gauzak* eta eskeintzariak aurkeztu beharrean, «*hona hemen ni, zure nahia egiteko*» esan behar deutsagu. Eta horrela, aurtengo Gabonak *beste era batekoak* izango dira.

# LAGUNGARRIAK

## ABENDUALDIKO IV. DOMEKEA "C"

«*Gabon honeetan aurkitu dabe lekua ostatuan*»
«*Esta navidad encontraron sitio en la posada*»

## Sarrera oharra

Abenduaren azken txanpan sartu gara, senideok. Domeka honetako Liturgiak ekimena Jainkoarena dala iragarriko deusku. Onena litzateke, ba, Jainkoari adi egotea, eta ez horrenbeste geure amesak garatzen ahalegintzea. Adi egongo gara, ba, Dabid erregearen ametsari, baina baita Jainkoaganako Mariaren prestutasunari ere. Entzun daigun Caritasen deia. Ondo etorri.

## Sarrera abestia

**ZATOZ, JAUN MAITALEA**

*Arantzazutik*

Za - toz, Jaun mai - ta - le - a, bi - zi - a - ren i - tu - rri - a! Me-
si - as Jaun- goi - ko - a, za - toz, za - toz - Jau - na.

1. En - tzun - ei - zu gu- re - mi - na, bai o - toi - tza, bai
ne - ga - rra, en - tzun kris - ta - uen e - zi - na.

† Aitaren eta Semearen…

† Hurrean dan Jauna izan bedi zuekin.

---

**Damu-otoitza** (*Beherago, Abenduko Koroia*)

Sarriegitan gura izaten dogu Jainkoak geure amesak gauzatu daizala; ez gara geu jarten haren esanetara. Egin deiogun dei haren errukiari:

—Jesus Jauna, Jainkoaren esane**ta**ra zengozana, *erruki, Jauna*.

—Jesus Jauna, Jainkoaren nahia bilatzen eta gau**za**tzen zenduana, *Kristo, erruki*.

—Jesus Jauna, Mariaren baietzaren

**fru**tua zarana, *erruki, Jauna*.

---

**Abenduko koroia** (egiten ez bada, gorago *damu-otoitza*)

Laugarren kandela hau bizterakoan, Jauna, zure esanetara Mariaren prestutasunez jartea eskatzen deutsugu; gure gizarte honek gizakiaren zoriona dozula atsegin ezagutu daian.

(4. k*andelea bizten dan bitartean, abestu:*)

♩= 100 Abenduko koroioa bedeinkatzean: Is 60,1 *Udaia*'97

Ja - gi zai - tez, Je - ru - sa - lem, ba - da - tor zu - re ar - gi - a;
hor do- zu ar - gi-tzen, su ta gar, Jau- na-ren ain- tza.

En - tzun, e - ne he - rri, zu - re - tza - ko do-dan hi -
E - ten lo - ka - rri - ak, ba - rri txa-rrak al - bo - ra -

tza: as - ka - tu - ko zai - tut, poz - tu - ko deu - tsut bi - ho - tza.
tuz, po - bre - tu guz- ti - ei zu - re bi - ho - tza za - bal - duz.

Itxaropenaren Jainkoak bere Semearen mahai ingurura ekarri gaitu. Egun baten aintzazko mahai ederrean alkartu gaizala,

zorionaren betetasunean.

AMEN.

**Mi 5, 1-4a**

Harrigarria da Mikeas profetak Jainkoaz emoten deuskun irudia: gure jokabide guztiak bazterrera botaten ditu. Onartuko ete dogu holan dihardduan Jainkoa?

**Erantzun salmoa: Sal 80**

Jainkoa goraltzen, haren handitasuna autortzen, eta, geure txikitasuna autortuz, eskatzen irakasten deusku salmo horen. Bere eskutik egin daigun otoitz.

**Hb 10,**



**5-10**

Gure ohiturea Jainkoari gauzak eskeintzea edo agintzea da. Baina Jainkoak gure gauzak barik geu ez ete gaitu gura? Ba gara geure burua eskeintzeko gauza?

**Ebanjelioa** (Lk 1,39-45)

Mariaren eta Isabelen, ahaide bion artean, jazoten danetik zegaz gelditu geintekez? Isabelek Mariaz egiten dauan goralpenaz? Aleluia abestuz egin deiogun harrerea, zutunik.



## Herri-otoitza

† Gizakion ona eta zoriontasuna gura dauzan Jainkoaren aurrean jarri gaitezan eskale, konfiantza osoz:

—Eleizearen alde: giza handigurak baztertuz, etxe-aterpe bakoen, pobreen eta

gauza ez diranen ondoan egonik iragarri daian Jainkoaren aukeratuak dirala, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Izurrite edo Pandemia honen erasoa sufritzen dabenek itxaropenik galdu ez daien eta besteon laguntza erakarri daien, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Herrialde aberatsek herrialde pobreen oihu eta garrasiak entzun daiezan, zabaldu daiezan muga-hesiak (fronterak), hareen kanpo-zorra ezabatu daien, eta mundu alkartuago baten alde lan egin daien, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—…/.. (Caritasen kanpainaren arabera…)

—Otoitzean alkartu garanok, Jainkoaren ekimena onartuz, haren esanetara jarri gaitezan, Mariaren erantzun berbera emonez, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

† Gizakion zorionerako gure artan gizon agertu zaran Jainkoa: onartu daigula zure ekimena, geuk ere gure senideen zoriona bilatu ahal izan daigun. Jesu Kristo…

## Jaunartzerako

**Zatoz, Jauna, zatoz lurrera**
**zure herri hau salbatzera.**

[1] *Bakea ta justizia bialdu mundura, Jauna;*
*zure jaiotzak guganana bekar poza, zoriona.*

[2] *Okerretatik zuzendu, gaitz bideetatik aldendu,*
*gure kateak apurtu (urratu), bide ilunak argitu.*

[3] *Gorroto-bideetatik aldendu gagizuz, Jauna;*
*alkar parkatu dagigun emoiguzu maitasuna.*

## Amaieran

Ez gaitezan gelditu axaleko beharrizanei begira. Barrurago begituz, izan daigun Mariaren adimena, uste on osoa Jainkoagan izateko jarrita, eta, haren esanetara egonez, gure senideen zerbitzura bizi izan gaitezan.

Gabonak zorionezkoak izan daitezala.

## Amaiera abestia

**Alaitasuna lurrean:**

**badator egunsentia.**

**Alaitasuna lurrean:**
**gu salbatzera dator Jainkoa.**

1 Jainko zuzen, zintzo,
gutaz, arren erruki.
Agindu zendun Salbatzailea,
zure seme-alabori, arren bidali.